# Basoko kondairak eta albisteak

## Basajaun eta basoko lagunak





Lehen Hezkuntzako 2. ziklorako materialak

Hizkuntzen Trataera Bateratua



**HIZKUNTZEN TRATAERA BATERATUEN PROGRAMA**
**PROGRAMA DE TRATAMIENTO INTEGRADO DE LAS LENGUAS**

**LHko 2.ziklorako materialak / Materiales para 2º ciclo de EP**

PROIEKTUA / PROYECTO: Basoko kondairak eta albisteakk

UNITATEAK: Noticias del bosque
UNIDADES: **Basajaun eta basoko lagunak**


ZUZENDARITZA ETA KOORDINAZIOA:
DIRECCIÓN Y COORDINACIÓN: Teresa Ruiz

SORTZAILEAK: Rakel Arrizabalaga
AUTORAS: Itxaropena Zaballa

KOLABORATZAILEAK:
COLABORADORES: Mari Mar Pérez, Maribi Apraiz, Inmaculada Marcos y asesores/as de primaria



ESKERRAKEMAN:
AGRADECIMIENTOS: **IZENADUBA MUSEOARI** eta **SUKARRIETAKO SESZ TALDEARI** irudiak eta materialak eskuzabaltasunez uzteagatik

Berritzegune Nagusia (Bilbao)
Eusko Jaurlaritza. Hezkuntza, Unibertsitate eta Ikerketa Saila.
Gobierno Vasco. Departamento de Educación, Universidades e Investigación.





2009ko ekaina
Junio de 2009



**UNITATEAREN AURKIBIDEA**



# BASAJAUN ETA BERE LAGUNAK

## Euskal Herriko pertsonai mitologikoak



Ezagutzen dituzu?

 Hurrengo orrialdean dauden argibideak irakurriz saia zaitez bakoitzari bere izena ematen

_______________ _______________

_______________ _______________

***Irudiak: IZENADUBAMuseoa***



.

Tartalo begi bakarreko izaki gaiztoa da. Basoan dauden haitzuloetan bizi da eta gazteak harrapatu eta jan egiten ditu.

Lamiak erreka zuloetan egoten dira ilea urrezko orraziaz orrazten. Hankak ahateenak bezalakoak izaten dituzte, eta gizakumeak liluratuta uzten dituzte. Kostaldean, lamiak gerritik behera arrain dira eta itsaslamia izena dute.

Basajaun basoan bizi da. Oso indartsua da, garaia, bizarduna eta ile luzeduna; ilea belaunetaraino iristen zaio eta ia gorputz osoa estaltzen dio.

Dama dotorea eta ederra da Mari, jenio guztien ama. Etxe asko ditu eta denak gure mendietako leizeetan: Anboton, Aizkorrin, Txindokin, Murumendin, Gorbeian eta abar.






Ahozko kultura nagusi izan den lekuetan, jakinduriaren zati handia ahoz aho pasatzen joan da, belaunaldiz belaunaldi. Bidai horretan istorioak aldatzen joan dira.

Ekintzak handitu eta pertsonaiei berriz, inoiz egin ez zituzten gauzak gehitzen zaizkie. Pertsonaia hauek mitologikoak dira, asko basoetan bizi ziren, eta ulergaitzak diren gauzen interpretazioa eskaintzen dute kondaira deituriko kontakizunetan.

Ezagutzen duzue zuen inguruan kontatzen den kondairarik? Eta pertsonaia mitologikorik? Galdetu etxean.

**PROPOSAMENA**

Basoa mundu magikoa da. Bertan bizitzak bere zentzu osoa hartzen du.



Ezagutu dezagun basoaren inguruan dagoen mundu hori eta jai bat antolatuko dugu. Basoa zer den eta bertan zer gertatzen den plazaratuko dugu.

Horma-irudien bidez zer den, bere elementuak zeintzuk diren, dituen onurak, jasotzen dituen kalteak… azalduko dugu.

Kondairak irakurriko ditugu lehengo istorioak ezagutarazteko eta horien berriak idatziko dituzue ikaskide txikiagoekin elkarketa joko bat egiteko. Nahi baduzue abestiak, dantzak… ere presta ditzakezue ***basoari*** omenaldi bat egiteko



# Ados jartzen





Euskara arloan Euskal Herriko kondairak kontatu eta pertsonai mitologikoak ezagutuko ditugu. Bide batez, basoko beste biztanleez ohartuko gara eta elkarrekin dituzten erlazioak ezagutuko ditugu.

Lanean hasi baino lehen, proiektu honetan ikasi eta egingo duguna zehaztuko dugu.

 Gure proposamena koadro honetan biltzen da. Zerbait faltan edo sobran dagoela iruditzen bazaizue, orain da egokitzeko momentua:

| ZER EGINGO DUGU? | ZERTARAKO EGINGO DUGU? | ZER IKASIKO DUGU? |
|---|---|---|
| • Kondairak irakurri eta berridatzi.<br>• kondairak aztertu, irakurri, idatzi …<br>• hitzak zuzen idazten….. | • Kondairak ezagutzeko..<br>• Hobeto komunikatzeko.<br>• Testu zuzenagoak egiteko. | • Kondairak nolakoak diren.<br>• Gero eta hobeto idazten, berba egiten, ulertzen eta irakurtzen. |
| • Basora joan.<br>• Testu desberdinak irakurri.<br>• Ingurua behatu eta aztertu.<br>• Muralak egin.<br>• Basoaren eguna ospatu. | • Informazioa ateratzeko.<br>• Ondorioak ateratzen jakiteko<br>• Ikasitakoa konpartitzeko eta ondo pasatzeko. | • Basoko elementuen arteko erlazioak.<br>• Basoan gertatzen dena kontatzen.<br>• Behaketaren bidez ondorioak ateratzen.<br>• Besteen aurrean ikasitakoa aurkezten. |
| • Taldeko lanean aritu.<br>• | • Lagunen artean hobeto sentitzeko<br>• | • Lagunekin lan egiten.<br>. |



**ADOS?**

Unitate honetan, lan batzuk taldeka egingo badituzue ere, bakarrik egitekoak ere badaude. Prest zaude konpromisoa hartzeko?

 Irakurri eta bete “Lan hitzarmen” hau. Prest bazaude idazten duzunarekin, sinatu.

## Lan hitzarmena

- Izena
- Egingo dudan lana gustukoa dut ..................................
  ............................................................... lako
- Ondo egiten dakidana:.........................................
  ..................................................................
- Egiten kostatzen zaidana: ......................................
  ..................................................................
- Laguntza eman dezaket:.........................................
  .................................................................
- Laguntza beharko dut:................ ..............................
  ..................................................................

Lan hitzarmen hau beteko dudala adierazten dut

Sinadurak

Ikaslea Irakaslea

Data: ..............................



# 1.SEKUENTZIA
# KONDAIRAK ETA HAIEN PERTSONAIAK

## 1. jarduera. Euskal Herriko kondairak



Zer dira kondairak? Ipuinak bezalakoak dira? Badute antzik gaztelaniaz irakurri duzuen albistearekin?

 Galdera hauek erantzuteko, gelan irakurriko dituzue hiru testu: kondaira, ipuina eta albistea.

### 1. testua

**Basajaun, unaien laguna**



Behin batean, Ezterenzubitik gertu, Espainia eta Frantziaren arteko mugan, lau unai gazte elkartu ziren arratsaldean behe-suaren inguruan, gero lo egingo zuten tapaki lodipean. Horrelakoetan, Basajauna ere etorri ohi zen haiekin batera berotzera. Ondoren, jan egiten zuen beretzat utzitako otamena.

Unaiek aspaldi zaharreko ohitura zuten ogia, esnea eta zenbait fruitu heldu uztea.

Esaten zenez, hura zen Anxoren partea.





Gau batean, unairik gazteena konturatu zen besteek ez zutela ohitura bete.

-Non utzi duzue Anxoren partea?

-Emaiozu zuretik nahi baduzu –erantzun zioten besteek.

Gazteak betiko oholaren gainean utzi zuen bere partea.

Denak oheratu zirenean, beti bezala iritsi zen jaun basatia.

Berotu ondoren, mutikoak utzia jan zuen.

Joan aurretik, janaria utzi zionaren arropa salbu, beste guztienak eraman zituen.

Gau horretan, hain zuzen ere, elur handia erori zen. Unaiek jaikitzean oso haserre jarri ziren bere arroparik aurkitu ez zutenean. Basajaunaz gogoratu eta eskatu zioten gazteenari:

-Zoaz gure arropen bila.

-Ez.

-Erregu egiten dizugu.

Horrek beste zerbait ere esan nahi baitzuen, hobe zen onartzea.



-Zer sari emango didazue?

Bazen larrean inork nahi ez zuen behi argal eta zahar bat.

-Behi zahar argala.

-Bai –erantzun zuen gazteak-, banoa zuen arropen bila.

Basajauna bizi zen leizera joan zen mutil gaztea.

Urrutik deiadar egin zuen:



-Anxo, emazkidazu nire lagunen arropak!

-Ez, ez dituzu hartuko.

-Emazkidazu, mesedez, bila bidali naute eta eramaten ez baditut jo egingo naute.

-Zer eskaini dizute lanaren truke?

-Inork nahi ez duen behi zaharra.

Basajauna algaraka hasi zen; ibar guztian zehar zabaldu zen bere barrearen oihartzuna.

Leizeko sarreran agertu eta gauean ekarritako arropa guztiak jaurtiko zituen.

-Har itzazu ba- esan zuen jaun basatiak-. Eta har ezazu hurritz makila hau ere. Berarekin baliatuko zara behia markatzeko. Emazkiozu ehun kolpe txiki eta bat handiagoa.



Etorri zen gaztea arropekin eta lasterka joan zen belardi barrenera bere behia aurkitzera.

Ehun kolpetxo eta handiago bat eman zizkion.

Aldi laburrera, behiak ehun eta bat txahal eder zituen.

Unai gaztea aurrerantzean, Basajaunari esker, besteak baino aberatsagoa izan zen, aldi honetan gizakien zereginez arduratzen baitzen.

Euskal Herriko kondairak. Michel Cosem

Ibaizabal argitaletxea



## 2. testua

### Pago eta Kanaberarena



**B**ehin baso batean bazeuden elkarren ondoan Pagoa eta Kanabera. Etorri zen hego haize zantar eta sendoa, baina Pagoak ez zuen beheratu nahi, eta bai aurpegia eman eta aurre egin haize gogorrari, esan ez zedin sendoagoa zela haizea bera baino. Kanabera, berriz, makurtu egin zen, eta haizeak mugitzen zuen, behin batera, behin bestera, nahi zuen bezala. Esan zion Pagoak:

..........—O Kanabera argal, koldar eta ikarakorra! Zergatik ez diozu aurre egiten haize zantar honi? Zergatik zabiltza zabuka sendo egon bagara? Ez duzu ikusten nik nola apurtzen ditudan nigana datozen erasoak?

Erantzun zion Kanaberak:

..........—Ez naiz ni zu bezain sendoa, ez dut erakutsi nahi ez daukadan indarrik.

Halako batean badator haize bolada gogor bat, apurtzen du gerri gerritik Pagoa; jotzen du behea, eta kanabera geratzen da bere lekuan.

Esaten dio Kanaberak:

—O Pago luze eta mardoa! Nora joan dira zure harrotasunak? Zergatik uste izan zenuen haizea baino gogorragoa zinela? Zutunik eta bizirik egongo zinen, egin bazenu nik egin dudana.

*Ez egizu burua jaso larregi,*
*jaitsi ez zaitzan beheregi.*

http://klasikoak.armiarma.com/idazlanak/M/MogelJAIpuinak048.htm **Ipuin 47.a** Egokituta



## 3. testua



### NUEVOS ÁRBOLES EN ILUNTZAR

La Comisión Forestal de Ekologistak Martxan, con el apoyo de Urdaibaiko Galtzagorriak, organizó el pasado 20 de noviembre una plantación de 50 nuevas plantas de distintas especies de **árboles y arbustos** en los alrededores del monte Iluntzar (Nabarniz).

El terreno en el que se ha llevado a cabo la plantación había sufrido una lamentable deforestación a consecuencia de los innumerables incendios ocurridos hace años.

http://www.urdaibai.org/es/portada.

 Taldean pentsatutakoa denon artean jarriko dugu

Zer dute **berdin** ipuinak, kondairak eta albisteak?

| | **Kondaira** | **Ipuina** | **Albistea** |
|---|---|---|---|
| Gertakizun bat kontatzen da. | | | |
| Zerbait nolakoa den azaltzen da. | | | |
| Gai bati buruz iritzia ematen da. | | | |
| Zerbait nola egin azaltzen da. | | | |



Pentsatu eta bete:

Kondairetan, ipuinetan eta albisteetan …………… …….

……………………………………………………………

……………………………………………………………

Horrelako testuei NARRAZIOAK deitzen zaie.

Azter ditzagun sakonago testu horiek.

Begira orain, ea aurkitzen dituzuen behean dauden elementuak irakurritako hiru testuetan.

| | **Kondaira** | **Ipuina** | **Albistea** |
|---|---|---|---|
| Pertsonaiak | | | |
| Gertaerak | | | |
| Denbora (noiz gertatu den) | | | |
| Lekua | | | |

Narrazioetan **pertsonaiak** egoten dira; zerbait **gertatzen** zaie **leku** eta **denbora** jakin batean.



Gehiago aztertzen baditugu hiru testuak, konturatuko zarete desberdintasunak ere badaudela.



Behatzaile zuhurragoa izan behar zarete orain eta **desberdintasunak** aurkitu. Denon arteko lana duzue koadro hau betetzea.

| | **Kondaira** | **Ipuina** | **Albistea** |
|---|---|---|---|
| Nortzuk dira pertsonaia nagusiak? (errealak/fikziozkoak) | | | |
| Nolako gertakizuna da? (benetakoa, fikziozkoa) | | | |
| Noiz gertatzen da? (orain dela asko, gutxi, etorkizunean) | | | |
| Non gertatzen da? | | | |
| Nola kontatzen da? (zehazki, irudimenaz lagundurik…) | | | |

Ikusten duzuen bezala, ipuinaren, kondairaren eta albistearen artean badaude berdintasunak eta desberdintasunak. Ondo pentsatu eta gero bete hurrengo koadroa kondairaren berezitasunak azaltzeko.





Kondairetan, ipuinetan eta albisteetan gertakizun bat kontatzen da.

Baina ***kondairen*** pertsonaiak ……………………….. ………izaten dira; ***gertakizuna*** ….. da benetakoa eta orain dela ……………. gertatu zen.



Ipuinak, kondairak eta albisteak narrazio mota desberdinak dira. Badira beste narrazio mota batzuk irakurri eta entzun egiten dituzuenak. Zeintzuk? Aipatu hemen:

___

___

___

___









## 2. jarduera. Pertsonaiak



Kondaira askotako protagonistak ***pertsonaia mitologikoak*** dira. Gogoratu proiektuaren amaieran kondaira idatziko duzuela. Horretarako pertsonaia aukeratuko duzue eta jakin beharko duzue haren deskripzioa egiten.

Euskal Herriko kondairetako pertsonai bat oso ezaguna duzue: ***Olentzero***. Berari buruzko abestiak gogoratu eta 5. orrian dauden pertsonaien antzerako deskripzioa egin. Adostu deskripziorako jarri behar duzuen informazioa:

- Nor da pertsonaia?
- Zer egiten du?
- Nolakoa da?
- Non bizi da?
-





# 2. SEKUENTZIA
# BASOA, BIZILEKUA

## 3. jarduera. Non bizi dira Basajaun eta bere lagunak?



Kondairetako pertsonai askoren bizitokia basoa da eta sarritan basoan kokatzen da kontatzen duten istorioa.

Gaztelania arloan ikasiko duzue zer den basoa. Baina zer da zuentzat basoa? Idatzi borobiletan basoa hitza entzutean burura datozkizuen ideiak.







## 4. jarduera. Goazen basora !



Basoa zer den edo bertan zer dagoen aztertzeko onena bertara joatea izango da.

 Denon artean basorako ibilaldia antolatuko dugu.

**Basora txangoa !**

**Zer egingo dugu?**

- 
- 
- 
- 

**Nola egingo dugu?**

**Zertarako egingo dugu?**

- 
- 

Basora joateko gogoratu zer eraman behar duzuen eta agendan apuntatu.



 Basoan ikusitakoa fitxa honetan jaso.

# BEHAKETA FITXA

TALDEKIDEAK:

Data:

Basoaren izena: Herria:

Zer aurkitu duzue?

| | |
|---|---|
| Goian  | |
| Behean  | |



# BEHAKETA FITXA.

Ezagutu duzuen basoa nolakoa da?

| | | |
|---|---|---|
| Bakartia | Bisitatua | Txukuna |
| Abandonatua | Itzaltsua | Koloretsua |
| Iluna | Argitsua | Garbia |
| Hotza | Zaratatsua | Usaintsua |
| Lasaia | Freskoa | Polita |
| Hezea | Misteriotsua | Beroa |

Nola sentitu zara basoan egon zarenean?

| | | |
|---|---|---|
| Pozik | Normal | Triste |
| Bakarrik | Hala nola | Beldurtuta |
| Lasai | Goibel | Urduri |
| Ondo | Aspertuta | Gustura |

Bisitatu duzuen basoaren deskripzioa egin.

______________________________________________

______________________________________________

______________________________________________

______________________________________________



# 5. jarduera. Basoa ekosistema da.



Basoan sartzean, landare eta animalia espezie desberdinak elkarrekin bizi direla ikusi duzue.

Baina… edozein animalia edozein tokitan bizi daiteke?
Ezagutu duzuen basoa edozein tokitan sor daiteke?

## 4. testua

Leku batean bizi diren animaliak eta landareek **bizidunen multzoa** osatzen dute, izaki hauek elikatu egin behar dira. Gainera ura, airea, tenperatura eta zoru egokiak behar dituzte bizitzeko eta hori guztia basoaren barruan dute. Elementu hauek bertako **bizigabeen multzoa edo inguru fisikoa** osatzen dute.

Leku bateko ezaugarri fisikoak eta bertan bizi diren izanki bizidunen multzoak **ekosistema** bat osatzen dute.



**bizigabeak**





**bizidunak**



**ekosistema**

Naturan bizidun desberdinak topatzen ditugu, ezaugarri fisikoak lekuz leku aldatzen direlako.

Baso desberdinak daude ezaugarri fisiko eta izaki bizidun desberdinekin.



 Topatu eta borobildu baso hauetan eta ez beste lekuetan bizi daitezkeen animaliak edo landareak.



**PAGADIA - HAYEDO**



**LARREA - PASTIZAL**



Basoan aurkitu dituzuen elementu batzuk bizidunen multzokoak dira. Beste batzuek aldiz, ez daukate bizitzarik eta bizigabeen multzoan daude.

 Hemen dauzkazue beste talde batek aurkitu dituen elementuak. Jakingo zenukete desberdintzen zeintzuk diren bizigabeak eta zeintzuk bizidunak? Hurrengo orrialdeko sailkapenerako koadroan idatzi. Gero, gelako ormetan eskegitzeko horma-irudia egin.

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Onddoak | Txoria | Lurra | Belarra | Barraskiloa |
| Erreka | Zizarea | Hotz-beroa | Iratzea | Euria |
| Harkaitzak | Airea | Ura | Gorotzak | Armiarma |
| Eguzkia | Basajaun | Orbela | Harea | Enborrak |



## SAILKAPENA

| Bizidunak (elikatzen dira) | Bizigabeak (ez dira elikatzen ) |
|---|---|
| | |

Zuek ere ikusi duzue Basajaun?
Zer gertatzen da Basajaunarekin? Biziduna da? Bizigabea?
Non bizi da?
Benetako pertsonaia da?
Egunkari bateko albisteetako protagonista izan daiteke? Zergatik?
Ezagutzen duzue basoko animalien ipuinik edo albisterik?

 Labur kontatu gelakideei ipuin edo albiste batean gertatzen dena. Agertzen diren elementuetan erreparatu.





# 3. SEKUENTZIA
# ZER GERTATZEN DA BASOAN

## 6. jarduera: Zer gertatzen da kondairetan?



Basoetan gure pertsonaia mitologikoak ere bizi ziren. Beste bizidunen antzera, hor aurkitzen zuten janaria eta babesa. Inguruko elementuekin erlazionatzen ziren.

 Irakurri Tartaloren kondaira eta gertakizunetan erreparatu.

**5. testua**

### Tartalo



Behin, bi anaia, bidaia luze batetik etxera zetozela, basoan galdu ziren. Gaua nonbait igaro behar eta, han inguruan ikusi zuten leize batean sartu ziren.

Geroxeago, Tartalo azaldu zen bere ardiekin eta, leizean sartu ondoren, sarrera harri handi batez estali zuen. Bi anaiak han zeudela konturatu zenean, begi bakar beldurgarri hura haiengana zuzenduz, honela esan zion zaharrenari:

-Hi, gaurko.

Eta besteari:

-Hi, biharko.

Eta hori esaten zuen bitartean, zaharrena hartu, burruntzi bat aldez alde sartu eta sutan jarri zuen. Gero jan egin zuen anaia gaztearen begi izutuen aurrean.

Lotaratu baino lehen, eraztun hiztun bat hartu eta mutilari sartu zion hatzean.



Eraztun horri galdetzen zitzaionean:

-Non hago?



Beti gauza bera erantzuten zuen:

-Hemen nago! Hemen nago!

-Horrela, non hagoen jakingo diat beti -esanez, mamutzar hark lo hartu zuen.

Denboralditxo batean, gaztea jota bezala geratu zen, zer egin ez zekiela. Etsiturik, leizean hara eta hona ibili zen zirrikituren baten baten bila, baina leize hark irteera bakarra zuen eta hura, berak bakarrik ezin mugi zezakeen harri handi batez estalia.

Azkenean burutapen bat izan zuen.

Burruntzia hartu, sutan berotu eta Tartalori sartu zion bere begi bakarrean. Erraldoiak, oihu. ikaragarri bat eginez, burruntzia atera egin zuen.

-Itsutu egin nauk, madarikatu horrek! Esku bakarrez txikituko haut!

Orduan Tartalo, bere onetik aterata, gaztearen bila hasi zen itsuka, baina hau ez zegoen lo, han zebilen batetik bestera, erraldoiaren atzaparretatik ihesean. Ardi eta larruen artean topatu ez zuenean, sarrerako haitza mugitu eta ardi guztiak, banan-banan, bere hanka tartetik pasarazi zituen. Mutila ere han atera zen, ardi larru batean bildua. Bere burua kanpoan ikusi zuenean, korrikari eman zion. Bere harrapakinak ihes egin ziola konturatu zenean, Tartalo eraztunaz gogoratu zen eta deika hasi:



-Non hago?

-Hemen nago! Hemen nago!



Erantzun zion eraztunak eta ahots horretaz gidatuz, Tartalo mutilaren ondoren abiatu zen. Erraldoiaren zangokada bakoitza bazen mutil gizajoaren hamar pauso halako eta honek korrika jarraitu zuen erraldoia geroz eta hurbilago zuela ikusiz. Ahaleginak egin zituen eraztuna hatzetik atera nahian, baina alferrik. Ia etsia hartu zuenean, botan zeraman mendiko labaina txiki bat hartu eta hatza moztu zuen. Gero, han inguruko putzu batera bota zuen eraztun eta guzti.




Tartalok berriro ere hots egin zuen:

-Non hago?

Eta eraztunak putzuaren hondotik:

-Hemen nago! Hemen nago!

Eta Tartalo, herrialde osoa ikaratua zeukan mamutzar gizajale hura, putzura erori eta bertan ito zen.

*Iturria: Euskal leiendak,Toti Mtz de Lezea. Erein*

 Zeren arabera dago ordenatuta istorioa?

❒ **Denboraren arabera**
❒ **Garrantziaren arabera**



Kondairetan gertaerak gertatu ziren hurrenkeran kontatzen dira, hau da, ______________________ **arabera ordenatuta daude.** Albisteetan aldiz, garrantziaren arabera**.**

Tartaloren kondairan gertaerak denboraren arabera ordenatuta daude. Zuek ere kondaira idazteko gertaerak ordenatu beharko dituzue.



 Zeintzuk dira Tartaloren istorioan gertatzen direnak? Idatzi falta diren gertaerak:

| | |
|---|---|
| 1. Bi anaia etxera zetozen | 7. Burruntzia begian sartu zion. |
| 2. …… | 8. …. |
| 3. Tartalo azaldu zen | 9. Tartalo eraztuna deika hasi zen |
| 4. … | 10. …. |
| 5. Zaharrena hartu zuen | 11. Hatza moztu zuen |
| 6. …. | 12. …… |

 Idatzi dituzuen esaldietan, pertsonaiek egiten dutena edo gertatzen dena azaltzen dituzten hitzak daude. Azpimarra itzazue eta idatzi gero koadroan.




| |
|---|
| Zetozen galdu ziren …. |





Gertatzen dena edo pertsonaiek egiten dutena azaltzen duten hitzak **ADITZAK** deitzen dira.

 Edozein beste testutan, bai idatzizkoetan, bai ahozkoetan, beti, aditzak agertzen dira. Zein aditz erabiliko zenituzke sarriago leku hauetan gertatzen dena esateko edo idazteko?











| Jolastu | Ikasi | Igeri egin | Hitz egin |
|---|---|---|---|
| | | | |
| | | | |
| | | | |

Gaztelaniazko unitatean albisteak aztertzen ari zarete. Testu horietan ere, aditzak agertzen dira eta ***verbo*** hitzarekin izendatzen dira.

 Aukeratu leku bat eta idatzi bertan gertatu daitekeena.

______________________________________________

______________________________________________

______________________________________________



# Gertaerak ordenatzeko baliabideak

Gertaerak ordenatzeko hitz bereziak erabiltzen ditugu, ***geroxeago*** adibidez. Kontatzen dena noiz gertatzen den zehazten dute

 Tartaloren kondaira berriro irakurri eta gertakizunak ordenatzen laguntzen duten hitzak aurkitu, azpimarratu eta hurrengo koadroan idatzi.

NOIZ ARTE? **Noiz** NOIZTIK?

*Geroxeago,* …………… ………………

………… ……………… ……………



Gertaerak ordenatzen laguntzen duten hitzak

DENBORA ANTOLATZAILEAK deitzen dira.

Txikitatik entzun eta irakurritako ipuinetan eta testu gehienetan agertzen dira horrelako hitzak.

 Denon artean zerrendatuko ditugu. Kontuan izan geroago erabiliko dituzuela! Idatzi:





Gaztelaniako unitatean, Martina Derechoren komikia idazteko, denborazko antolatzaileak ere erabili dituzue; hauei ***organizadores temporales*** deitzen zaie.

 Aurreko ariketan jarri dituzuen gertaerak denbora antolatzaileekin lotu istorio txiki bat izango balitz bezala.

 Kondaira zati bat da hurrengo testua. Desordenaturik dago. Denbora antolatzaileek lagunduko dizuete testua antolatzen.

Laukietan zenbakiak jarri ordenaren arabera.

**6. testua**

| | Lamia ezkongai |
|---|---|
| | Gero, sasi batzuk baztertu zituen eta aho zabalik geratu zen han ikusi zuenarekin: ibaiaren erdian, haitz baten gainean, neska eder paregabe bat ikusi zuen eserita. |
| | Halako batean, kantu eder bat entzun zuen eta erabat liluraturik, ardiak ahaztu eta ahots hura ateratzen zen lekura joan zen. |
| | Behin batean, Lain izeneko artzain gazte Orozkotar bat mendian zebilen bere artaldearekin<br><br>http://www.puntubi.com/tik hartuta |



# Puntuak

Irakurri duzuen Tartaloren kondairan gertakizunak ordenatuta badaude ere, ez daude paragrafo batean idatzita. Albisteetan bezala batzutan puntu eta jarraian dago eta beste batzuetan puntu eta aparte. Zergatik?

 Berriro irakurri bi paragrafo hauek, denon artean hausnartu puntu eta puntu eta aparte erabiltzeko zergatia eta ondorioak atera.

## Tartalo

Behin, bi anaia, bidaia luze batetik etxera zetozela, basoan galdu ziren. Gaua nonbait igaro behar eta, han inguruan ikusi zuten leize batean sartu ziren.

Geroxeago, Tartalo azaldu zen bere ardiekin eta, leizean sartu ondoren, sarrera harri handi batez estali zuen. Bi anaiak han zeudela konturatu zenean, begi bakar beldurgarri hura haiengana zuzenduz, honela esan zion zaharrenari:

 Lotu gezien, zuen uztez, egia dena:

**Puntu eta aparte** idazten dugu…

**Puntu eta jarraian** idazten dugu…

- ❒ gertaera berdinarekin jarraitu nahi dugunean.
- ❒ beste gertakizun batekin hasteko.
- ❒ paragrafo bati amaiera emateko.
- ❒ paragrafo berdinean jarraitzeko.



**Puntua eta jarraian** idazten dugu ____________

______________________________________

_____________________________________

**Puntu eta aparte** idazten dugu ____________

___________________________________

_____________________________

Non ipiniko zenukete falta den puntua eta aparte kondaira zati honen bi paragrafoak bereizteko?

## 7.testua

### Ziripot



Duela urte asko, Lantzen, oso pertsona herrikoia bizi zen, Ziripot izenekoa. Gizon handia eta potoloa zen, oso lodia. Horrela bada, kontu zaharrak eta ipuinak kontatuz ateratzen zuen bizia, auzoek jana ematen baitzioten horren truke. Egun batean, ordea, Miel-Otxin izeneko erraldoi bat azaldu zen Lantzen. Zakarra eta gaiztoa zen, jende guztiaz abusatzen zuen eta zuten guztia lapurtzen zien. Harekin, izaki arraro bat zetorren, erdi gizon, erdi zaldi. Zaldiko zen bere izena.

**www.puntubi.com**





# 7. jarduera. Zer gertatzen da basoan?

Basajaunak, Tartalok eta basoko biztanle guztiek basoan bertan aurkitzen dute babesa, aterpea eta janaria

Zer gertatzen da basoan?

Nola bizi dira basoko biztanleak?

 Ipini izaki bakoitzaren ondoan zerez elikatzen den. Ez dakizuena gero jarriko duzue.




Jaten du    Jaten du

| | | | |
|---|---|---|---|
| | | | |
| | | | |
| | | | |
| | | | |
| | | | |

Elikagaiek izaki bizidunei bizitzeko behar duten energia ematen diete.



# Elika-katea

Irakurri hurrengo testua basoan zer gertatzen den hobeto ulertzeko.

**8. testua**

Bizidunak elikaduraren ikuspuntutik duten erlazioaren arabera sailka daitezke. Sailkapen horretan bakoitzak bere maila du, baina maila horiek bata besteari lotuta daude segida bat osatuz, katea bat bailitzan. Horregatik erabiltzen da KATEA hitza.

Elika-katearen oinarrizko mailetan elikagaien oinarrizko ***ekoizleak*** daude, hau da, eguzkiaren energiaz baliatzen direnak bizitzeko. **Landareak** dira horiek.

***Ekoizleak* (Landareak)**



Oinarrizko maila horietan dauden bizidunak, landareak, hurrengo mailetako bizidunen elikagaiak dira, **belarjaleena**, hain zuzen ere.

***Kontsumitzaileak I***
**(animalia belarjaleak)**





Katearen hurrengo mailetan, ordea, belarjalez elikatzen diren **haragijaleak** daude. Denetatik jaten duten animaliak ere badaude, hauek **orojaleak** dira. Hauek guztiak ***kontsumitzaileen*** taldea osatzen dute.

***Kontsumitzaileak* II**
**(animaliak: haragijaleak eta orojaleak)**



Azkenik, hildako edozein bizidun deskonposatzen duten onddo eta mikroorganismo **deskonposatzaileak** daude. Eta, horrela, berriz ere, bizidunen mineralak lurrera itzultzen dira.

***DESKONPOSATZAILEAK***
**(onddoak eta mikroorganismoak)**



Dena den, kontuan izan kate-maila bakoitzean bizidun-espezie asko dagoela (belarjale espezie asko dago, haragijaleenak ere bai…) eta, modu batean edo bestean, batak besteari eragiten diola.

http://www.zernola.net/ Egokitua



 Aurreko testuan irakurri duzuen informazioaz eta gaztelanian ikasi duzuenaz baliatuz, eskeman falta diren izenak idatzi.

**IZAKI BIZIDUNAK**

- **Kontsumitzaileak (animaliak)**
  - ______
  - Orojaleak
  - Bedarjaleak
- **Ekoizleak (landareak)**
  - ______
  - Orojaleak
  - Bedarjaleak
- **Deskonposatzaileak**
  - ONDDOAK
  - ______



Ikasi duzuen sailkapen hau beste gelako ikaskideek ikas dezaten horma-irudi bat egin behar duzue.

Lehenengoz, behean dauden bizidunak sailkatu hurrengo orrialdeko koadroan. Horma-irudia egiteko erabili ahal dituzue unitate amaieran daudenak edo zuek ekar ditzakezuenak.

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Onddoak | Kukua | Otsoa | Belarra | Barraskiloa |
| Pagoa | Zizarea | Hartza | Iratzeak | orkatza |
| Galanperna | Gorostia | Hontza | Sugea | Armiarma |
| Belea | Mikroorga nismoak | Lur-sagua | Loreak | Tartalo |

Azkeneko orrialdean irudi hauek dituzue horma-irudian jarri nahi badituzue.



# Bizidunen sailkapena

## BIZITZAREN GURPILA

Konsumitzaileak

Ekoizleak

Deskonposatzaileak



# Nork jaten du nor? Elika-kateak

Irakurri duzuen bezala, bizidun guztiak erlazionaturik daude elika katearen bidez.

Behean dauden izaki bizidunak elika-kate baten partaideak dira, jakingo zenukete, gezien bidez azaltzen, zerez elikatzen den bakoitza?








Idatzi orain, gezien bidez azaldu duzuena. (Nork-nor)

---

---

---

---



# 8. jarduera. Gertatzen dena kontatzen



Basoan gertatzen dena era desberdinetan azaldu daiteke. Aurreko ariketan izaki bakoitza zerez elikatzen den idatzi duzue. Tartaloren kondairan ere kontatzen da Tartalok zer jaten zuen. Eta… albisteetan elikadurari buruz gertaeren berri ematen dute? Gertaerak modu desberdinetan kontatu daitezke.



 Azter ditzagun modu desberdin horiek.

Irakurri hurrengo 3 zatiok eta asmatu zein testuri dagokion.

| Ikasteko testua | Albistea | Kondaira |
|---|---|---|
| | | |

**B** Bi anaia gazteak han zeudela konturatu zenean, begi bakar beldurgarri hura haiengana zuzenduz, honela esan zion artzain zaharrenari:

-Hi, gaurko.

Eta besteari:

-Hi, biharko.



2009 Martxoak 7

Txokolatez elikatzen den karrera autoa diseinatu dute

**Inglaterran, Warwick** unibertsitateko zientifiko talde batek **Txokolate lantegietako ondakinez elikatzen den** Formula 3 auto bat diseinatu eta fabrikatu dute.

http://erenovable.com/2009/05/07/

**A** Katearen hurrengo mailetan, ordea, belarjaleez elikatzen diren **haragijaleak** daude.



 Denon artean hausnartu galdera hauen bidez eta ondorioa atera.

- ❒ Zuen ustez, zergatik kontatzen dira modu desberdinetan gertakizunak?
- ❒ Kondaira bat irakurtzen dugunean, zer da nahi duguna?
- ❒ Albiste bat irakurtzen dugunean gauza bera nahi dugu?

 Pentsatu eta denon artean ados jarri. Zein da bakoitzaren helburua?

**Kondairaren** helburua

**Berriaren** helburua

**Ikasteko testuen** helburua

**Informatzea**

**Une atseginak igarotzea**







Kondairaren helburua ___________________ da,

albistearena berriz __________________



Entzuleak edo irakurleak une atseginak igarotzeko modu desberdinak daude. Orain azalduko dizuegun baliabidea erabilgarria da zuen kondaira idazteko.

Astiro irakurri hurrengo adibide hau:

| A | B |
|---|---|
| Emakumea uretan desagertu zen. | Hain polita zen emakume gazte hori itsasoko uretan poliki-poliki eta atzera begiratu gabe desagertu zen. |

Denon artean hausnartu galdera hauekin:?

 Zein zati dagokio kondaira bati? ☐ zein albisteari ☐

 Azpimarratu **B** laukian **A** laukian dagoen informazioa.

 Zein da **B**-n gehitu den informazioa?

______________________ ________________________

_________________________ __________________________

 Zein da informatzeko testua? ☐

 Zein da entretenitzea nahi duena? ☐



 Orain, pertsonai hauek uretan nola sartzen diren, entretenitzeko moduan kontatu. Azkenean idatzi behar duzuen kondaira idazteko lagungarri izango da.

| | |
|---|---|
|   | Hain _______ zen emakume _______ hori ____________________ uretan ________________________________ desagertu zen. |
|  | Hain…. |
|  | Hain… |

 Zuen hitzekin azaldu:



Narrazioetan gertaerak kontatzerakoan

esaldiak _______________ dira eta _____________

__________________________________________



# 4.SEKUENTZIA
# BASOA, BIZILEKUA BAINO GEHIAGO

## 9. jarduera. Kondairatik eta albistera






Ikusten ari zarete basoan ematen diren erlazioak era desberdinetan kontatu daitezkeela.

Gaztelanian ikasi duzue albiste batean gertaera garrantzitsuena hasieran kontatzen dela.

Eta kondairetan? Non idazten da gertaera nagusiena?

 ***Martin Txiki eta Jentilak I*** kondaira arretaz entzun.

**9. testua**





Xabier Kintana. Argitaletxea: Erein)
*http://aittu1.wikispaces.com/Bideoak?f=print*

 Gogoratu jaialdian zuek idatzitako kondaira irakurriko duzuela. Arreta jarri zer eta nola esaten duen narratzaileak. Markatu egia dena:

- ❑ Ozenki irakurtzen du.
- ❑ Doinu desberdinak egiten ditu.
- ❑ Arin irakurtzen du.





Ikasi duzue 7. jardueran, kondairetan gertaerak denboraren hurrenkeran idazten direla. Lehendik ere, bazenekiten ipuinetan bezala, gertaerak hiru zatitan banatzen direla: hasiera, korapiloa eta amaiera.

 Martin Txikiren kondairaren pasadizoak dituzue hurrengoak. Jarri **H, K** edo **A** hasiera, korapiloa edo amaierako gertaera den azaltzeko

 Herriko guztien aurrean mutikoak botak erantzi eta gari guztia zaku batean sartu ere bai.

 Jentilek barre egin zioten Martin Txikiaren desafioari eta batek gari pilaren gainetik salto egin zuen erraz-errazki

 Herrian ez zekiten lurra lantzen eta horregatik zuhaitzetatik jausten ziren urrak eta ezkurrak jan behar zituzten.

 Albisteetan garrantzitsuena hasieran idazten da. Zein da goiko pasadizoetatik albiste batean hasieran idatziko zenuketena?

 Ipuinaren hiru ataletatik zein kokatuko zenukete albistearen hasieran? Lotu gezi baten bidez.







 Nola agertuko litzateke Beasaingo herriko egunkarian Martin Txikiren lorpenaren albistea?. Ordenatu zatiok albistea osatzeko.



Martin Txikik gari aleak tranpa eginez lortu zituen. Hemendik aurrera Beasaingo herritarrek, urrak eta ezkurrez gain, gari ogia ere jango dute.




Martin txiki garia erakusten

Martin Txiki izeneko gazteak Beasaingo plazara (Gipuzkoa) heldu zen atzo bere botetan Jentilei lapurtutako gari aleak zituela.



Beasain, Ka. 50.urteko irailaren 5an

**Garia aleak lortu ditu gazte batek**



Albisteetan informazioa garrantzitsuena hasieran ematen da, kondairetan aldiz, ______________ dago.



## 10. jarduera. Basoaren onurak



Kondairetan irakurri duzuenez, basoetan ikasi zuten jentilek nola ugaltzen diren landareak. Horrela garia erein ahal izan zuten, egokiak ziren lekuetan. Bestaldetik, sarritan agertzen dira egunkarietan basoak eskaintzen dituen onurari buruzko albisteak.

Zer gehiago eskaintzen du basoak?

Animali eta landareentzako bakarrik dira basoaren onurak?

Merezi du basoa zaintzeak?

Hurrengo testuetan basoko eginkizun onuragarriei buruzko informazioa daukazue. Ideia nagusiak atera eta gelara datozen beste ikaskideek ikus dezaten horma-irudi bat egin behar duzue.

### 1 Animali eta landereen aterpea eta elikagaien biltegia

Zure ustez, zerez egin du habia txori honek? Non aurkitu ditu materialak?



_______________________________

Eta beste hauek non aurkitu dute babesa eta janaria? _____________











 Lotu gezi baten bidez non aurkituko lukete babesa eta janaria hurrengo animalia hauek:















 Zergatik animalia batzuk ez dute aurkituko gure basoetan janaririk ezta babesik ere?

________________________________________________________

________________________________________________________

Basoak bertan bizi diren animaliei _________________________


____________________________________ eskaintzen die.



## 2 Zuhaitzek lurrari mesede egiten diote.

Zuhaitzetako sustraiek basoko lurrari eutsi egiten diote.



Euria egiten duenean, adarrek eta hostoek euri tanten indarra leuntzen dute. Ura poliki-poliki jaisten da. Ur gehiago geratzen da lurrean eta horregatik ez du lurra narras eramaten.

 Pentsatu eta erantzun:

Zergatik landatzen dira zuhaitzak errepide alboetako aldapetan?

____________________________________________

____________________________________________



Basoko zuhaitzek ______________

________________________

________ eskaintzen die.

## 3 Bero dagoenean, basoan hobeto




Zuhaitzek ere klimarekin zerikusia daukate. Hostoek gerizpea ematen dute, inguruaren hezetasuna mantentzen dute. Horregatik basoa beti egoten da fresko.



Zuhaitz asko moztuko balira, Eguzkiak zorua gehiegi berotuko luke eta klima sikua eta beroa izango litzateke, basamortukoa bezalaxe.



Basoko zuhaitzek ______________

______________________________

______________________________

eskaintzen die.

## 4 Basoa planetaren birikak



Basoan zuhaitz asko dagoenez, oxigeno kantitate handia ekoizten dute. Zer dela eta hau?

Landareek elikagaia sortzeko, lurreko gatz mineralak eta ura behar dituzte, baita ere airean dagoen karbono dioxido gasa. Lan hori egitean, zuhaitzek, beste landare berdeek bezala, beste gas bat kanporatzen dute, guk behar dugun oxigenoa, hain zuzen ere.

Basoko zuhaitzek ______________________________________

______________________________ eskaintzen dute.



 Zer ikusten duzue irudi honetan?



 Zer adierazi nahi du irudi honek?

## 5 Eta gehiago....

Basoak gizakiari gai asko eskaintzen dizkio. Egurra ez ezik, sendabelarrak, fruituak, erleen eztia.....

 Gezien bidez seinalatu zuhaitzaren zein ataletatik lortzen diren produktu hauek:


















## 6 Oraindik … gehiago

Betidanik, basoak pertsona askoren idazteko gogoa eta irudimena piztu ditu. Kondairak, ipuinak, berriak, abestiak asmakizunak…eta abar idatzi dira basoari buruz.



Gozatzeko abestu, jolastu, errezitatu …

## 10. testua

Ikusi mendizaleak
baso eta zelaiak,
mendi tontor gainera
igo behar dugu.

Ez nekeak, ez da bide txarra;
gora, gora, neska-mutilak, a, a, a,
Gu euskaldunak gara,
Euskal Herrikoak.

Hemen mendi tontorrean,
euskal lurren artean,
begiak zabaldurik,
bihotza erretan.

Hain ederra, hain polita da ta,
gora, gora Euskal Herria, a, a, a,
Gu euskaldunak gara,
Euskal Herrikoak.
Gu euskaldunak gara,
Euskal Herrikoak.

http://www.youtube.com/watch?v=fWl0H9vWipg



## ASMAKIZUNAK

Arestian bizirik,
Orain berriz,
hilik.
Etxea berotzen
du alai eta pozik



Iletsu eta
bizarduna udan,
Biluzik eta
burusoil neguan.



Hankak ditueta
mugitzerik ez,
Janaria du
Eta jaterik ez.

Zer dela eta
zer dela
Zenbat eta
gehiago hazi
Orduan eta
beherago
Hasten dena.

SESZ: Urdaibaiko basoak



Basoko **izaki bizidunak** (landareak, animaliak, onddoak eta mikroorganismoak) bizi diren **ingurunearekin** (ura, airea, zorua…) erlazionatzen dira. Gertakizun hauek kondairetan, albisteetan… kontatzen dira

**BASOA EKOSISTEMA DA.**



# 5. SEKUENTZIA
# JAIALDIA

## 11. jarduera. Jaialdia prestatzen





Dagoeneko basoari buruz gauza asko ikasi duzue. Badakizue basoko gertaerak kontatzeko badirela horma-irudiak, abestiak, kondairak, albisteak …

Euskara arloan nahi duzuen kondaira idatzi eta kontatuko duzue eta Gaztelanian kondairaren albistea idatziko duzue zuen ikaskide txikiagoekin elkarketa joko bat egiteko.

 Gogora ekarriko ditugu kondairari buruz ikasitakoak

| | **Bai** | **Ez** |
|---|---|---|
| Kondaira narrazio bat da. | | |
| Pertsonai batzuk agertzen dira. | | |
| Zerbait gertatzen da. | | |
| Denbora eta lekua agertzen da. | | |
| Pertsonaiak deskribatzen dira. | | |
| Gertaerak ordenatuta azaldu behar dira denbora antolatzaileen bidez.. | | |
| Une atseginak igarotzeko moduan kontatzen da.(esaldi luzeagoak eta ……………………….) | | |



| | | |
|---|---|---|
| Gertakizun garrantzitsuena amaieran aipatu behar da. | | |
| Puntu eta jarrai idatziko dugu gaia edo gertaera berbera kontatzen dugunean. | | |
| Beste gertaera bat hasten dela adierazteko puntu eta aparte jarriko dugu. | | |
| Basoa eta mitologiari buruz dakigunaz baliatuko gara kondaira idazteko. | | |



 Egin dituzuen horma-irudietan basoari buruz ikasi duzuena islatu duzue. Ea ondo gogoratzen duzuen jakiteko horien ahozko azalpena prestatuko duzue. Horrela txikiak gelara datozenean, egin ditzaketen galderak erantzun ahal izango dituzue.

Hasteko, azalpen batean zer den garrantzitsua adierazi:

| GARRANTZITSUA DA … | BAI | EZ |
|---|---|---|
| Zer esango dugun jakitea. | | |
| Abiadura handiz hitz egitea. | | |
| Ahots tonua oso baxua izatea. | | |
| Entzuleak begiratzea. | | |
| Horma-irudiei jaramonik ez egitea. | | |
| Azalpena ulertaraztea. | | |

Talde bakoitzak mural bat aurkeztuko du

Gero, zure taldean adostu bakoitzak esango duena.



 Zerrendatu hemen behean, unitate honetan ikasi dituzun hitz berriak:

 Beste momentu batean gai honi buruz gaztelaniaz hitz egin behar baduzue hitz horiek gaztelaniaz nola esaten diren idatzi. Hiztegian begiratzeko alfabetoaren segida gogoratu.

 Idatzi orain zuri esatea dagokizuna:



 Ondo ikasi duzuen frogatzeko hurrengo galdetegian esaten dena egia ala gezurra den adierazi gurutze bat jarriz.

| | Egia | Gezurra |
|---|---|---|
| Basoa zuhaitz eta zuhaixkaz estalitako eremu zabal bat baino gehiago da. | | |
| Ekosistema baten elementuak bi multzotan bildu ditzakegu: bizidunak eta bizigabeak. | | |
| Landareak zuhaitzak, zuhaixkak edo belarrak izan daitezke. | | |
| Baso bateko bizidunak basamortu batean ere, janaria eta babesa topa ditzakete. | | |
| Elikaduraren bidez ekosistemaren elementuak erlazionatzen dira. | | |
| Deskonposatzaile gabe elika-katea posiblea da. | | |
| Basoak kalterik ez du jasotzen. | | |
| Basoak gizakiari bakarrik egurra, fruituak eta gerizpea ematen digu. | | |
| Basoa zaintzea planeta osorako onuragarria da. | | |

Egin dituzuen ariketa zuzentzeko, zuen artean liburuak trukatu eta zalantzak badituzue unitateen lehenengo sekuentzietan landutakoarekin konparatu.



# 12. jarduera. Kondaira idazten



Zein da kontatuko duzuen kondaira? Gaztelanian eta euskaran agertu direnak edo zuek ekarritako liburuetakoak izan daitezke.

## Pertsonaiak

Kondairaren pertsonaia deskribatu egin behar duzue. Gogoratu deskripzioak egiteko pausuak (2. jarduera).



 Orain hasi deskripzioarekin. Marraztu eta idatzi.





## Gertaerak

Gertaerak denboraren arabera ordenatu behar dira. Eskema batean idatzi zeintzuk diren garrantzitsuenak. Gogoratu denbora antolatzaileak jartzea.

*geroxeago* *laster* *hurrengo egunean*

*azkenean* *gero* *orain dela urte asko*

…*ean* *bat-batean*

1.
2.
3.
4.
5.
6.
7.
8.
9.



Kondaira idazten hasi baino lehen, beste ezaugarri batez ohartu behar zarete. Hitz edo izen bat gehiegi ez errepikatzeko orain azalduko dizuegun baliabidea erabili behar duzue.

Irakurri berriro unitatearen 1. testua eta borobildu Basajaun izendatzeko erabili dituzten modu desberdinak.

Nola izendatuko zenituzkete beste pertsonaia hauek? Eta zuen kondairaren pertsonaia izendatzeko?

   

| **Tartalo** | **Lamia** | **Jentila** | |
|---|---|---|---|
| ............. | ............. | ............ | ............. |
| ............. | ............. | ............ | ............. |
| ............. | ............. | ............ | ............. |
| ............. | ............. | ............ | ............. |

**ederra munstroa gizon indartsua**
**begi bakarra izaki beldurgarria**
**neska gaztea basoko erraldoia**
**bera errekako dama**



Idazten hasiko zarete. Hurrengo kontrol-zerrendak lagunduko zaituzte.

 Eginda dagoenean ☑ jarri

| | ***Eginda*** |
|---|---|
| Pertsonaia deskribatu dugu | |
| Gertaerak denboraren arabera ordenatuta daude | |
| Denbora antolatzaileak erabili ditugu | |
| Gertaerak une atseginak igarotzeko moduan kontatuta daude | |
| Puntu eta jarrai eta puntu eta aparte ondo jarri ditugu. | |
| | |
| | |
| Hitzak ondo, akatsik gabe, idatzi ditugu | |





# Idatzitakoa hobetzen

Idatzi duzuen zirriborroa hobetu daiteke. Beste talde batek lagunduko dizue lan horretan.

Taldeen artean zirriborroak trukatu eta hobekuntzarako proposamenak egingo dizkiezue beste taldekideei. Eredu hau erabil dezakezue:

| | **Hobekuntzarako proposamenak** |
|---|---|
| Kondaira entretenigarria da? | |
| Pertsonaiak nolakoak diren ulertzen da? | |
| Zer gertatzen den ondo ulertzen da? | |
| Gertaerak ordenatzeko denbora antolatzaileak daude? | |
| Puntu eta jarrai eta puntu eta aparte ondo jarrita daude? | |
| Ondo idatzita dago? (ortografia, letra itxura…) | |

Proposamenen arabera, zirriborroa hobetu eta irakasleak egin diezaioke azken zuzenketa garbira pasatu baino lehen.



# 13. jarduera. Idatzitakoa irakurtzen





Jaialdian kondaira irakurri behar duzue. Lehenengo saiakera bat egingo duzue. Martin Txikiren kondaira entzun zenutenean gauza batzuetaz konturatu zineten. Zer eduki behar duzue kontuan testu bat irakurtzerakoan?

Entzun berriro grabazioa eta zerrenda honetan markatu irakurtzean kontuan eduki behar dituzuen alderdiak:



- ❑ Ozenki irakurri behar da.
- ❑ Saiatu doinu desberdinak egiten.
- ❑ Arin irakurri.
- ❑ Esaldiaren amaieran ere entzuteko moduan irakurri.
- ❑

Gelako lagunen aurrean egingo duzue saiakera. Eta jai egunean hobeto egiteko proposamenak idatziko dituzue kontrol zerrenda honetan. Erabaki behar duzue taldeko nork irakurriko duen.

| | **Hobekuntzarako proposamenak** |
|---|---|
| Irakurtzeko abiadura. | |
| Doinu desberdinak egitea | |
| Irakurtzeko doinu maila. | |



# 14. sekuentzia. Jaialdia



Jaialdirako hainbat ekintza prestatzen joan zarete. Kontrol zerrenda honek egitekoak planifikatzen lagunduko zaituzte.

Egitaraua:
Kondairak irakurri
Albisteen jokua

| | ✓ | ✗ |
|---|---|---|
| **Aurkezlea**: | | |
| **Kondairaren Tituloa**: | | |
| Nork irakurriko du? | | |
| **Albistea**<br>Ondo aurkeztuta dago. | | |
| **Muralak**<br>Basoari buruz ikasitakoa ulertzen da.<br>Ondo aurkeztuta daude. | | |
| **Abestiak**<br>Buruz ikasita dago | | |
| **Dantza** | | |
| | | |



Ondo pasa!!





Egitaraua:

Kondairak irakurri

Albisteen jokua

Muralak

Kantak

....







Egitekoen banaketa:

Aurkezlea:

Irakurleak:

Dantzariak:











## 15. jarduera. Eta azkenean…..





Jaia pasa eta gero egindako lana ebaluatzeko ordua da. Ekintzak ebaluatzeko hurrengo kontrol zerrenda erabil dezakezue.

| | **Ondo** | **Kili-kolo** |
|---|---|---|
| **Kondaira**<br>Entretenigarria izan da<br>Zer gertatzen den ondo ulertu da. | | |
| **Albisteak**<br>Kondairaren gertaera garrantzitsuena albistean islatu da. | | |
| **Muraletan**<br>Basoaren elementuak bereizten dira.<br>Sailkapenak ulertzen dira..<br>Basoan ematen diren erlazioak ikusten dira.<br>Basoaren onurak eta kalteak islatzen dira | | |
| **Bestelakoak**<br>Abestiak, dantzak asmakizunak egokiak izan dira | | |





Unitatearen hasieran egindako lan hitzarmena ebaluatzeko hemen daukazu moldatu dugun koadroa.

## EBALUAKETA

- Izena ..................................................................

- Hauxe egin dut ondo :...........................................

..................................................................................

- Hauxe da oraindik zaila:

..................................................................................

- Laguntza eman diot: ....................................

..................................................................................

- Laguntza eman dit :................... ..............................
 ....................................... ..............................
 .......................................

Proposatuko lana horrela bete dut

☐ONGI ☐ OSO ONGI ☐ BIKAIN ☐ ESKAS

Sinadurak

Ikaslea Irakaslea

Data: ...............................

